Zorionekoak bakegileak,
ze Jainkoaren seme-alaba izango dira.
Zorionekoak zuzentasunagaitik erasoa jasaten dabenak,
ze eurena dabe Jainkoaren erreinua.
Zorionekoak zuek, Nigaitik madarikatuko zaitueenean, erasoka eta guzurrez txarto-esaka erabiliko zaitueenean. Poztu zaiteze eta alaitu, ze handia izango da zuen saria zeruetan».

Jaunak esana.

**ERRESPONSOAN**

Hildako gure senideari azken agurra emotean, bateatua izan dala gogoratzen dogu uraz zipriztinduz; hantxe iragarri zan Jainkoaren semea zala Jesu Kristogan. Orain honen berbiztean esku hartzen dauala iragarriko dogu, itxaropenez, abesti artean.

**Azken oharra**

Gure atsekabean, eta beste edozein unetan ere, Jainkoak ez gaitu bertan-behera izten. Eroan daigun bere berbearen argitasuna eta bere maitasunaren gozoa. Eta izan daigun uste on: Aita dalako hartu dau, betiraun osorako bere altzoan, senide izan dogun **Patxi**.



# HILETAK

**Sarrera-agurra**

Senideok: hildako gure senide **Patxik** deitu gaitu bere ingurura. Eta hementxe gagoz, sinismeneko alkartean, haren alde otoitz egiteko; haren etxekoei, euren atsekabean geure hurtasuna erakusteko; eta baita, **Patxi** gogoratzean, Jainkoaren maitasunaren eta errukiaren barri izateko ere; eta gure barruan dagoan esker ona indartzeko.

Eskertu deiogun Jainkoari **Patxik** bizi izan ditun egun guztiak, bizitzan zehar egin ahal izan dauan on guztia; alkarren ondoan Jainkoaren barri izateko dogun aukerea; eta **Patxi** Jainkoaren altzoan, bizitza betean somatzea.

**Sarrera abestia**

*—Zabal deiola Jaunak zeruko atea,*
*herri hartara zuzen eroan daiala.* R/.

**R/. Zabal deiola Jaunak zeruko atea.**

*—Ez da sartzen han gaua ez eta hiltea;*
*han da betiko poza, han argi zabala.* R/.

**Pazko-Zuzia biztean**

Pazko-Zuzia bizteaz iragarten dogu zer sinisten dogun: Jainkoak ez dauala bere Semea heriotzearen lokarrien menpe izten, biztu egiten dauala baino. Hortxe oinarritzen da gure sinismena, eta hortxe hartzen dau indar gure itxaropenak. Abestuz iragarri daigun gure esker ona.

**Biztu da Kristo: Aleluia! Guregan dago: Aleluia!**
***Gure gorputza dau-ta egoitza: Aleluia!***
***Orain berekin gaitu bat egin: Aleluia, aleluia!***

**Lehenengo Irakurgaiari sarrera-oharra** (Jkt 3, 1-9)

Bizitza, hartu dogun erregalua bada, zelan darabilgun aztertu behar izango geuke: geure atseginerako? ala besten zerbitzurako? Sinistun begiez begiratuz, hauxe litzateke benetan bizi izatea.

**Jakituria liburutik** Jkt 3, 1-9

Zintzoen bizia Jainkoaren eskuetan dago,
ez ditu ezelako oinazek harrapatuko.
Zentzunbakoen begietan hilda egozan behin betiko,
hareek hemendik urtetea zoritxartzat jo eben
eta gugandik urruntzea guztizko hondamenditzat;
baina zintzoak bakean dagoz.
Gizakien eretxiz, zigorra jasan eben,
baina hareek hilezkor izateko itxaropenez beterik egozan.
Uste ona Jainkoagan dabenek ulertuko dabe egia,
haren maitasunari leial jakozanek iraungo dabe beragaz;
onginahia eta errukia dau-eta fededunentzat
eta ardura bere aukeratuentzat.

Jaunak esana.



**Erantzun salmoa**

Salmo honegaz Jainkoaren egarri garala, eta haren samurtasunen bila gabizela iragarriko dogu. Barrutik urten deigula otoitz honek.

**Ebanjelioa** (Mt 5, 1-12a)

Jesus ez dabil atseginkerietan. Haren bizitza Jainkoaren erreinua bizikereaz iragartea da: horixe gura dau geuretzat ere. Egin deiogun harrerea **Aleluia** abestuz, zutunik.

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

Aldi haretan, jentetza ikusirik, Jesusek mendira igon eban. Jesarri eta ikasleak inguratu jakozan. Orduan, honan hasi jaken irakasten:
«Zorionekoak gogoz behartsu diranak,
ze eurena da Jainkoaren erreinua.
Zorionekoak negarrez dagozanak,
ze eurak ditu Jainkoak kontsolatuko.
Zorionekoak apalak,
ze eurek izango dabe agindutako lurra ondare.
Zorionekoak zuzentasunaren gose eta egarri diranak,
ze eurak ditu Jainkoak aseko.
Zorionekoak errukitsuak,
ze eurak ditu Jainkoak erruki izango.
Zorionekoak bihotz-garbi diranak,
ze eurek ikusiko dabe Jainkoa.